# OTSAILeko BEDEINKAPENAK

JAUNAREN AURKEZPENA



San BLAS



**Jaunaren aurkezpena** (Otsailak 2)



**Sarrera-oharra**

Ondo etorri, senideok, Jaunaren aurkezpena ospatuko dogun liturgiara. Garrantzi handia dau sarrera-oharrean esango jakunak, gero egingo dogun guztia ulertzeko eta bizi izateko. Biztu daiguzan eskuan daukaguzan kandelak.

† Aitearen eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.

Ant.: *Ba dator gure Jauna bere indarrez:*
*Berak argituko ditu bere morroien begiak.*
*Aleluia!*

## Abadeak

Senide maiteok: Orain berrogei egun, pozaren pozez ospatu genduan Jaunaren Jaiotza-eguna. Gaur, barriz, Jesus Jerusalemgo tenplura eroan eben eguna dogu; Jesus aurkeztean, itxuraz, legea betetzea besterik ez eben egin; baina, egiaz, fededunen herriari bidera urten eutson Jesusek.

Espiritu Santuak erakarririk, han egozan tenpluan Simeon eta Ana zoriontsuak; eta Espiritu berak argiturik, ume txiki harengan Jauna ezagutu eben, eta pozik emon eben haren barri.

Geu ere, Espiritu Santuak baturik, goazen Jaunaren etxera, Kristoren bidera. Ogia zatitzean aurkituko eta ezagutuko dogu bera, barriro aintzaz agertuko jakun arte.

## Egin daigun otoitz

Oi Jainko, argi guztien iturria eta sorburua,
herrialde guztien Argia dan Kristo
erakutsi zeuntsan gaurko egunez Simeon zintzoari;
sagaratu egizuz kandela honeek
zeure † bedeinkazinoaz;
entzun zeure herriaren eskariak,
argiak eskuetan dabezala,
zure izena goresteko batu da-eta hemen;
egizu, bide onean ibili daitezala,
betiko argira heltzeko.

Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

(**Goazen, bakean. Urten deiogun Jaunari bidera**...)

**Kantuak**

**Jesus, munduko Argia**
Jesus zinezko Egia.
Jesus betiko Bizia.

*Gure bihotz barruan / biztu zure argia;*
*gaitezen gu munduan/ argi Jainkoz betia.*



**San BLASen onespena**

Jaungoiko gure Jauna,
eskerrak emoten deutsuguz
Zugandik hartzen doguzan
dohai guztiekaitik.
Bedeinkatu † eizuz,
sinismenez hartu ta erabiliko doguzan
hari, jaki eta gauza guzti honeik.
Eta San Blas zure aukeratua gogoan dogunok,
askatu gaizuz samako edozein gatxetatik
eta emoiguzu gorputz-arimetako osasuna

gure bizitzako egun guztietan.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.